# 2011ko askapenaren brigadak

## Internazionalismoa lantzeko tresna, kanpoan eta etxean

**Iñaki Etaio**
Askapenaren militantea

Irailaren 24an, Arrasaten, 2011ko Askapenako brigada internazionalisten balorazioa egin zen. Ez zen kasualitatea izan herri honetan gauzatzea. Izan ere, irailaren 30ean Pakito Arriaran euskal militantearen heriotzaren 27. urteurrena betetzen zen. Euskal Herrian borrokatu ostean El Salvadorren eman zuen bizitza, FMLNren militantea izanda, euskal internazionalismoaren ikurra bihurtuz.

Irailaren 24an brigadistak eta Askapenako militanteak herri ezberdinetan egindako ekimenak, izandako topaketak, jasotako irakaspenak eta hemendik aurrera egitekoak azaltzen eta eztabaidatzen aritu ziren. Aurten brigadistak Palestinan, Mexikon, Saharan, Argentina-Uruguayn eta Venezuelako República Bolivariarran egon dira, hainbeste urteetan egindako ekimen internazionalista honi jarraipena ematen.

Brigadak Askapenaren urteroko ekimenen artean sartzen da, erakunde internazionalista honen parametro ideologikoetan kokatuta. Hain zuzen ere, Askapenaren kontzeptu nagusia joan-etorriko elkartasuna da. Beste era batean esanda, beren askatasuna lortzeko borrokan dauden beste herriei elkartasuna eskaini behar diegula argi dago, baina, aldi berean, beste herriei egin diezaiekegun elkartasunik onena gure herria askatzea eta beste jendarte eredua eraikitzea da. Beste herrien esplotazio kapitalistaren laguntzailea izango ez den eta beste herriekiko harremanak askatasunetik, berdintasunetik eta elkartasunetik eraikitzen arituko den Euskal Herria.


Iñaki Etaio

Horregatik ezinbestekoa dugu internazionalismoa, printzipio etiko bat izateaz gain behar bat dena. Historiari so egiten badiogu konproba dezakegu ez dagoela herririk inperialismoari berak bakarrik aurre egin ahal izan dionik, libre izateko eta beste eredu bat eraikitzeko. Eta sufritzeko eta borrokatzeko sekulako gaitasuna erakutsi duten beste herriek ez badute lortu, ezin dugu pentsatu lortuko dugunik guk bakarrik. Are gehiago, beste herrietako elkarkide askori esker gaur Euskal Herria ez dago bakarrik, Estatu espainiarraren eta frantziarraren errepresioaren salaketa oihartzuna izan du leku askotan eta, bizi dugun garai politiko berrian, euskal herritarren borondatean oinarritutako irtenbideari sostengua handitzea errazagoa izan da nazioarteko

**“Al hacer balance del trabajo de los brigadistas de Askapena en el año 2011 se valoró el enriquecimiento mutuo que supone la labor de las Brigadas. Es evidente el apoyo que se ofrece a los procesos de liberación de los pueblos en los que se colabora, pero sin olvidar que la mayor aportación que podemos dar a los citados pueblos es el de tratar de construir una Euskal Herria que no sea cómplice de la explotación capitalista de los pueblos. Ningun pueblo ha podido hacer frente al imperialismo por sus únicos medios por lo que el internacionalismo es totalmente necesario, y lo es para Euskal Herria.”**

eremuan. Internazionalismoa, beraz, ez zen hil Che edo Pakito hil zutenean. Egungo eta biharko beharra eta inbertsioa da, potentzialtasun handikoa.

Parametro ideologiko hauetan kokatzen dira brigaden helburuak ere. Brigadistek beste herrien egoera eta borrokak ezagutzen dituzte ber-bertatik, beste esperientzietatik ikasteko aukera paregabea eskaintzen duena. Horrek ahalbideratzen du brigadistek ikusitakoa Euskal Herrian zabaltzea bueltan. Nahiz eta modu apalean izan, ekimen ezberdinen bidez (hitzaldiak, elkarrizketak, artikuluak, bideo-muntaiak…) kapitalisten komunikabideetatik gauzatzen den herri horien borroken ezkutaketari eta desitxuratzeari aurre egiten zaio.

Baina, aldi berean, brigadistek jasotako irakaspen batzuk, beste errealitateetan kokatuta dauden arren, Euskal Herrirako ere interesgarriak izan daitezke, beste herrietarako euskal ekimen batzuk ezagutzea probetxugarriak izan daitezkeen bezala. Izan ere, elkartasun-harremanak eraiki ahal izateko, lehenengo pausua elkar ezagutzea da, aipatutako manipulazio mediatikoaren gainetik.

Zentzu honetan, oso garrantzitsua da brigadistek egiten duten lana gure herriaren historia, egoera eta bizi dugun gatazkaren jatorria azaltzean. Euskal Herriari buruz dagoen ezagupena eta gure borrokaren arrazoiak zabaltzeko baliabideak eta aukerak lekuz leku oso ezberdinak badira ere, hainbeste urteetan zehar brigaden bidez eta beste ekimenen bidez (Euskal Herriaren Lagunak kasu) egindako lanak Euskal Herriari buruzko ezagupena handitu du, baita elkartasuna piztu eta zabaldu ere.

Egiten den lanak azaltzen du Estatu inperialistetik, eta bereziki Estatu espainiarretik, jasotako kriminalizazioa eta errepresioa ere, Askapenaren aurkako 2010eko irailaren sarekadan eta ondorengo auzipetzeetan espresuki gauzatu zena. Sistema kuestionatzen ez duen elkartasunaren aurrean (kasu askotan hobe litzateke asistentzialismoa izendatzea), pobreziaren aurka bai baina aberastasunaren aurka (pobreziaren iturria azken finean) aritzen ez den elkartasunaren aurrean, benetako herri libreen mundu baten alde borrokatzeak badu bere kostua. “El socialismo y el hombre en Cuba” idazki nabarian Che-k oso ondo azaldu zuen: “gure sakrifizioa kontzientea da, eraikitzen dugun askatasuna ordaintzeko kuota da”.

Brigadek duten beste helburu bat internazionalistak formatzearena da. Beste herrietara joan baino lehen brigadistek formakuntza mintegi batzuk jaso behar dituzte, non gai ezberdinak jorratzen diren (internazionalismoa, nazioarteko egoera zonalde ezberdinetan, sozialismoa eta marxismoa, Euskal Herriaren Historia, bizi dugu prozesuaren nondik norakoak…). Horretaz gain, brigada bakoitza biltzen da bisitatuko duen herriaren ezaugarriak, egoera eta borrokaren inguruan jantziago joateko. Zentzu honetan, udako egonaldia formazio horren

**“La aplicación de experiencias conocidas otros pueblos, aunque entroncadas en realidades diferentes a las de Euskal Herria, pueden ser interesantes para ser trasladadas a nuestro pueblo. A su vez, los brigadistas dan a conocer en los pueblos donde trabajan la relidad de nuestro pueblo y las razones de nuestra lucha”.**

jarraipena da, jarraipen praktikoa. Brigadak mundua interpretatzeko, aldatzeko premiaz jabetzeko eta internazionalismoaren ezinbestekotasuna barneratzeko balio behar zaie, teoriaz gain “herrien samurtasun” hori bizitzen eta sentitzen ere. Zentzu honetan, internazionalismoa Euskal Herrian zabaltzeko tresna dira, bai brigadatik bueltan Askapenaren bidez brigadistek egiten duten lanarekin, bai bakoitzak militatzen duen erakundearen barruan ikuspuntu internazionalista gehituz.

Aipaturiko helburuak betetzeko asmoz, beren norakoetara abiatu ziren brigadistak uztaila eta abuztua artean. Palestinako kasuan, behin Estatu sionistaren kontrolak turista bezala pasatuta, aukera izan dute Cisjordaniako egoera ikusteko eta Herri palestinarrak pairatzen duen etengabeko jazarpena ezagutzeko, errepresio militar agerikotik askoz harago doana. Izan ere, palestinarrentzat eguneroko bizitza oztopoz beteriko lehiaketa bihurtzen da, bai mugitzeko, bai lehengaiak eskuratzeko, bai ur edangarria lortzeko… Palestina suntsitzeko helburuarekin planifikatutako operazio kriminal batean sartuta, munduko estatu “demokratikoen” onespenarekin. Aldi berean, brigadistek ikusi ahal izan dute palestinarren kemena beraienari eusteko eta zapalketari aurre egiteko, gaur egun bizirik jarraitzen duen eta bere etorkizuna eraiki nahi duen herria mantentzea ahalbideratu duena eta gainontzeko herrientzat erreferente bilakatu dena.

Mexikoko brigadistek, herri horren egunerokotasun gogorra eta krudela ezagutu ahal izan dute zentzu batean, zeren eta aurreko urteetan egondako leku batzuetan, Ciudad Juarez esaterako,






ezin izan dute egon, segurtasun ezaren arazoak medio, bai brigadistentzat bai hango lagunentzat. Hala ere, Mexikon bizi den ezinegona eta, terrorearen gainetik, aurrera eramaten diren borrokak antzeman dituzte. Hegoaldeko estatuetan jendarte-erakundeekin eta jatorrizko herrien komunitate batzuekin egoteko parada izan dute, herriaren protesten kriminalizazioa eta komunitateen militarizazioa bertatik bertara ikusiz. Edonola ere, justizia, berdintasuna eta askatasunaren alde Zapataren oihartzuna presente dago herri borrokalarian.

Kriminalizazioa eta errepresioa eguneko errealitatea dira Saharan ere, Marokoren autoritarismo eta basakeriari ez ezik, nazioarteko eta NBEren utzikeria eta hipokrisiari aurre egin behar dion herria. Izan ere, herrien zapalketan oinarritutako harreman komertzialak medio, eta Estatu sionistarekin gertatzen den bezala, Marokoko Estatu monarkikoak baditu konplize asko giza eskubideak eta demokrazia babesteko oso “kezkatuta” omen dauden Estatu batzuen artean, espainiarra eta frantziarra barne. Saharara joan diren brigadistak ez dira oraingoan zapalketaren lekuko izan bakarrik, baizik eta Sahararen zapalketa ezkutatzeko estrategiaren xedearen lekuko ere bai. Alabaina, egun batzuetan zehar okupatutako Sahararen egoera ezagutzen egon ostean, langileen manifestazio batera zindoazenean Marokoko poliziak gelditu eta okupatutako lurraldetik bota zituen.

Gainontzeko bi brigadetan, Venezuelako República Bolivariarrakoan eta Argentina-Uruguaykoan, ildo konkretu batzuei lotu dira brigadisten eginkizunak. Alde batetik, memoria historikoari dagokionez, Argentinara joandako brigadistek diktadura militarraren borreroak zigortzeko eta egia ezagutzeko borrokatzen duten erakunde batzuen lana ezagutu izan dute, baita Euskal Herrian martxan dauden ekimenak ezagutarazi ere. Izan ere, Historia inperioek eta estatuek idatzi ohi dute, herrien aurka egindako sarraski eta errepresioa euren interesen arabera, egindakoa justifikatzeko, borreroak zigorrik gabe geratzeko eta herriaren amnesia bultzatzeko, gaur egungo errealitatera nola heldu garen ezkutatzearen bidez etorkizunean parametro berdinetan jarraitzeko. Memoria historikoa mantentzeko ahaleginetan kokatzen da brigada honen Montevideorako bisita. Hain zuzen ere, Filtroko ospitalaren sarraskiaren 22. urteurreneko martxan parte aktiboa izateko (1994ko abuztuaren 24an hiru euskal errefuxiatuak espainiaratuak ez izateko uruguaitarren mobilizazio erraldoiaren aurka oldartu zen polizia, eta Fernando Morroni eta Roberto Facal hil zituen). Beste herrietako esperientzia hauek jasoaz, Euskal Herrian memoria historikoa berreskuratzeari ekarpen bat egin ahal zaio internazionalismotik ere.

Bigarren ildo berri bat ekoizpen eredu alternatiboena da. Argentinan urte batzuetatik hona langileek gestionatutako lantegi batzuk bisitatu dituzte brigadistek. Venezuelako kasuan, langileen kontrolpean dauden enpresek ibilbide motzagoa daukate, baina prozesu bolivartarraren osagai oso garrantzitsua dira. Kasu honetan, ekoizpen eredu honi gobernutik emandako bultzada nabarmena da, ekoizpen, antolaketa eta gestio esparruak burgesiari kendu eta langileri antolatuari emateko saiakeran, dependentzia gutxitzeko eta herriaren beharrei erantzuteko asmoz. Venezuelako brigadistek enpresa hauen funtzionamendua ikusi ahal izan dute. Inolako zalantzarik gabe, Euskal Herrian sozialismorako bidean hurrengo urteetan ireki behar den eztabaidarako oso baliogarriak izan daitezke Argentina eta Venezuelako esperientzia hauek.

Hirugarren ildoa demokrazia parte-hartzailearena dugu. Ekoizpen eredu alternatiboekin azaldu den bezala, Venezuelan urte batzuk daramatzate herriaren parte-hartzea bultzatzeko eta ahalbideratzeko ahaleginetan. Ekimenen artean kontseilu komunalen sorrera nagusia da. Parte-hartze sistema honetan herria antolatzen da auzoetan eta herrietan populazioari dagozkion gaiei buruz eztabaidatzeko, erabakiak hartzeko eta erabakien burutzea kudeatzeko. Tresna hauen bidez aurreko sistemaren botere kontzentrazioa eta herriaren gehiengoaren marginalizazioa apurtu nahi da, pertsonak eta kolektibitatea subjektu kontziente eta protagonista bihurtuz. Brigadistek aukera izan dute kontseilu batzuen bileretan egoteko eta haien eginkizunak, funtzionamendua eta zailtasunak ikusteko. Ekoizpen ereduen inguruan aipatu denez, gure herrian demokrazia zuzenagoa eta parte-hartzaileagoa garatzeko bidean oso lagungarriak izan daitezke eredu honen irakaspenak ere.

Azaldu diren ildoek esparru konkretu batzuei ekiten diotenez, Euskal Herrian ildo hauek lantzeko eremu horietan aritzen diren euskal eragileen inplikazioa ezinbestekoa da, elkarlan aberasgarri batekin euskal jendartera heltzeko. Horrek ahalbideratu behar du internazionalismoa gainontzeko arloetan zabaltzea ere.

Ikus daitekeenez, brigadak, ekimen bezala, lehen aipatutako joan-etorriko kontzeptua gauzatzen saiatzen dira. Brigadistei azaltzen zaien bezala, Askapenaren helburua ez da ahalik eta brigadista gehien bidaltzea, baizik eta aipaturiko helburuei ekitea.

Kanpoko egonaldia bukatu da eta orain lana jarraitzeko momentua da, Euskal Herria libre, sozialista eta internazionalista eraikitzeko bide horretan. Internazionalismoa ez baita zerbait puntuala, momentu edo gertakizun konkretu batera mugatzen dena, baizik eta zeharkako gai bat, Euskal Herriko esparru eta eragile guztiak zeharkatu behar dituena.